# BATEATZAILEAREN EGUNEKO HOMILIA

Senideok: ZORIONAK! gure Parrokiaren zaindaria dan Joan Bateatzailearen egun honetan. Herriko jaiak bakean, alkartasunean, errespetuan… zorionean egin daizuezala opa deutsuet.

Giza-mailan bizi dogun egoerea ez da zorionekoa, horraitino; arazo handiei egin behar jake aurre: jaietan erasoak jasaten dabez andrazko askok; gure gizartean indartzen dihardue eskoi-muturrak eta neo-liberalismoak. Eta horrek zera esan gura dau: pobreak edo behe mailakoak edo "desbardina" danak beste inork baino gehiago sufriduko dauala. Zer esanik ere ez etorkinak!

Zelan ukatu daiteke gure Ludi edo Planeta hau suntsituazoten dihardugunik; edo ekonomiari eta ekoizpen linealari mugak ezarri behar jakozanik…?

Gauzak ez dagoz, ba (kanpoan lez Eleizan ere ez) txaloak joteko moduan. Eta Izadia maite dogunok, eta ezereztuen alde jokatu gura dogunok zeozer baino gehiago egin beharra daukagu.

Ba, Bateatzaileagan hartu geike eredu!

Harek, gauzak hain desbideratuta ikusiz, *apurtu* egin eban bere etxeaz, berari egokionaz, eta baztertuaren bizitzari, bizikera neurritsuari, baina

esanguratsuari, ekin eutson buru-belarri.

Orduko egoera harek herriari Jainkoagandiko hondamena ekarriko eutsola, eta aldatu beharra egoala iragarten eban ozenki, damura eta penitentziara eta bizikeraz aldatzera deituz, Jainkoaren zigorraren zemaipean.

Laster azaldu jakozan erlijio agintarien kontu hartzaileak.

Bere inguruan hainbeste jente (euren artean Nazareteko Jesus ere bai) eukan arren, eta izen handia itxaropena galduta ez eukan jente xehearen artean, ez eban bere burua goraltzen. Apaltasun handiz autortzen eban bera ez zala Mesias, ez Profeta, ez Argia… oihuka ziharduan ahotsa baino.

Bizikera horrek, senideok, heriotzara eroan eban.

Haren irudia, izena eta izana omentzen eta ospatzen dogunok ez ete dogu aintzat hartuko haren autortza, eta jokatuko Jesusen jarraitzaile lez?

Geuk ere, Bateatzaileak lez somau geike Jainkoaren deia, eta aukeratuak garala entzun: gaurko egunei eta egoereari aurre egiteko aukeratuak garala.

Zer eskatzen deusku honek? Bizikeraz aldatzea: arinkeriaz barik, sakontasunez bizi izatea; ingurura begiratzean, zelan atsegin hartuko barik, zelan baztertuak, erasotuak eta pobreenak aintzat hartuko bilatzea; kontsumoa murriztea, bestea errespetatzea, gizartearen aldeko deiei erantzutea…

Horixe nahi dogu gauzatu eta indartu gure eleizkizunetan, Jainkoaren berbea alkarregaz entzunez, alkar adoretuz eta ingurukoei ere geure artera deituz…

Senideok: Nazareteko Jesusek zeozer aurkitu eban Bateatzaileagan, eta horrek bere norabidea eta bizikerea aldatzera eroan eban. Baina iragarten eban Jainkoa ez zan bildurgarria edo zemaipean gaukazana, errukitsua, parkatzailea eta seme-alaba lez maite gaituan Aita baino.

Badaukagu, ba, nori jarraitu, eta badaukagu hutsik ez deuskula egingo agindu deuskunaren berbea. Ez gagoz bakarrik. Eta merezi dau gure alkarte honen, eta Gizartearen eta Izadi osoaren aldeko ahaleginetan gure indarrak eralgiteak.

Bilatu daigun, ba, alkartzea, sinismena ospatzea eta alkarregaz jardutea. Horixe ZORIONTASUN bidea!